# Urtean Zeharreko XXXIII. astelehena
## I. urtean
### I. IRAKURGAIA

*Ikaragarria izan zan*
*Israelek jasan behar izan eban probaldia.*

Makabearrak lehenengo liburutik

*1 M* 1, 10-15. 41-43. 54-57. 62-64

Egun hareetan, muskil pekatari bat sortu zan, Antioko Epifanes, Antioko erregearen semea; Erroman bahitua egon ondoren, seleukotarren agintealdiko ehun eta hogeta hamazazpigarren urtean hasi zan errege izaten.

Egun hareetan, lege-hausle batzuk sortu ziran Israelen eta jente asko eurenganatu eben, esanez: «Ea, egin daigun hitzarmena inguruko herri jentilekin; izan be, hareengandik bereizi ginanetik, kaltea besterik ez dogu izan». Asmo hori ontzat emon eban askok, eta herriko batzuek erregeagana jo eben, eta honek baimena emon eutsen jentil-herrien ohiturak hartzeko. Jentilek ohitzen daben lez, kiroldegia eraiki eben Jerusalemen, erdainkuntzaren aztarnak ezabatu

ebezan, uko egin eutsoen itun santuari eta jentilen buztarria onartu, euren burua txarrerako salduz.

Antioko erregeak agindua idatzi eban bere erreinu osorako: guztiek herri bat bera izan behar ebela eta, horretarako, nork bere ohitura bereziak baztertu behar ebazala. Herri guztiek onartu eben erregearen agindua; israeldar askok be erregearen erlijinoa onartu eban, idoloei opariak eskeini eutsezan eta zapatua profanatu eban.

Seleukotarren agintealdiko ehun eta berrogeita bosgarren urteko Kisleu hilaren hamabostean, Antioko erregeak ikaragarrizko idolo higuingarria ezarri eban tenpluko altara nagusiaren gainean, eta Judako uri guztietan be altarak eraiki ebezan; etxeko atean eta plazetan intsentsua erretzen eben, eta aurkitzen ebezan lege-liburuak apurtu eta erre. Norbaiti itun-libururen bat aurkitzen baeutsoen edota legearen aginduak betetzen ebazala jakiten baeben, hil egiten eben, erregeak agindu ebanez.

Halan be, israeldar askok sendo iraun eban eta, adore handiz, janari

kutsaturik ez hartzea erabagi eban; nahiago izan eben hil, janari hareekaz kutsatu eta itun santua profanatu baino, eta halantxe hil ziran. Ikaragarria izan zan Israelek jasan behar izan eban probaldia.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 53 eta 61. 134 eta 150. 155 eta 158 (R/. ik. 88)

R/. **Gorde nagizu bizirik, Jauna,**
**eta beteko ditut zure legeak.**

V/. Hasarre-sutan jartzen naz gaiztoakaitik,
zure nahia baztertzen dabenakaitik.
Gaiztoen lakioek inguratu naben arren,
ez naz zure nahiaz ahaztu. R/.

V/. Askatu nagizu gizakien zapalkuntzatik,
eta beteko ditut zure legeak.
Hurrean dira gaiztakeriaren atzetik dabiltzanak,
zure legetik urrun dira. R/.

V/. Salbazinoa gaiztoengandik urrun dago,
zure arauen bila ez dabiltzalako.
Desleialak ikusten ditut eta higuin emoten deuste,
ez dabe Zuk agindua gordetzen. R/.

II. urtean

## I. IRAKURGAIA

*Hartu gogoan nondik jausi zaran,*
*eta bihotz-barritu zaitez.*

Apokalipsia liburuaren hasiera

*Ap* 1, 1-4; 2, 1-5a

Hau da Jainkoak Jesu Kristori egin eutson agerpena, honek bere zerbitzariei laster jazoko dana agertu egien; bere aingerua bialduz adierazo eutson Joan bere zerbitzariari. Eta honek autortzen dau, ikusi dauana Jainkoaren mezua dala, Jesu Kristok baieztatua. Zorionekoak mezu profetiko hau irakurri eta entzuten dabenak, eta bertan idatzitakoa gordetzen dabenak, hurrean dago-eta beteko dan sasoia.

Nik, Joanek, Asiako zazpi eleiz alkarteei: grazia eta bakea zuei badan, bazan eta etortzekoa dan Jainkoaren izenean eta beraren tronuaren aurrean dagozan zazpi espirituen izenean.

Jaunak esan eustan: «Idatzi egiozu Efesoko eleiz alkartearen aingeruari: Hona zer dinoan zazpi izarrak eskumako eskuan dituanak, urrezko zazpi argimutilen artean dabilenak: "Ezagunak ditut zure jokabidea, zure neke-lanak eta zure pazientzia. Badakit

ezin dozuzana gaiztoak jasan eta, benetako apostolu izan barik, euren burua apostolutzat dabenak aztertu eta guzurtitzat itzi dozuzana. Badozu eroapenik, eta nekeak jasan dozuz, atzera egin barik, nire izenagaitik.

Badot, ostera, zeozer zure kontra: galdu egin dozula hasierako zeure maitasuna. Hartu gogoan, beraz, nondik jausi zaran; bihotz-barritu zaitez eta bihurtu lehengo jokabidera"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 1, 1-2. 3. 4 eta 6 (R/. *Apk* 2, 7b)

R/. **Garaileari biziaren arbolako frutuetatik**
**emongo deutsat jaten.**

V/. Zorionekoa gaiztoen aholkuari jarraitzen ez deutsona,
pekatarien bidean ez dabilena,
ezta lotsabakoen batzarrean jesartzen be;
ezpada zeJaunaren legean atsegin dauana,
haren legea gau eta egun hausnartzen dauana. R/.

V/. Ur-ertzean landaturiko zuhaitzaren

antzekoa da:
emoten dau bere sasoian frutua,
eta ez jako orririk igartzen;
egiten dauan guztiak ondo deutso urteten. R/.

V/. Ez holan gaiztoak, ez holan,
haizeak daroan galtzuaren antzekoak dira.
Jaunak zaintzen dau zintzoen bidea;
gaiztoena, barriz, galdu egiten da. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Jn* 8, 12

R/. **Aleluia.**

V/. Neu naz munduaren argia, dino Jaunak;
Niri jarraitzen deustanak bizirako argia izango dau. R/.

## EBANJELIOA

*Zer nahi dozu Nik zuri egitea?*
*Ikusi dagidala, Jauna!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 18, 35-43

Behin baten, Jesus Jerikora hurreratu zanean, itsu bat egoan eskean bide-ertzean jesarrita. Jentea igarotzen barruntaturik, ha zer zan itaundu eban.

Jesus Nazaretarra igarotzen zala jakinazo eutsoen. Orduan, deadarka hasi zan: «Jesus, Daviden Seme, erruki zakidaz!»

Aurrean joiazanek gogor egiten eutsoen isildu eragiteko; baina harek oihu handiagoz: «Daviden Seme, erruki zakidaz!»

Jesusek, gelditutа, beregana ekartzeko agindu eutsen. Hurreratu zanean, itaundu eutson: «Zer gura dozu Nik zuri egitea?» Itsuak erantzun: «Ikusi dagidala, Jauna!» Jesusek esan eutson: «Ikusi, bada; zeure sinismenak osatu zaitu».

Bat-batean, ikusi egin eban eta Jesusen ondorik joian, Jainkoa goratuz. Eta herri osoak, gertatua ikusirik, Jainkoa goratu eban.

Jaunak esana.

______________________________2

# Urtean Zeharreko XXXIII. martitzena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jarraibide bikaina itziko deutset gazteei,*
*gure legeagaitik kementsu emon dagien bizia.*

Makabearrak bigarren liburutik

*2 M* 6, 18-31

Egun hareetan, bazan Eleazar izeneko gizon bat, lege-maisu nagusienetakoa, adin handiko eta itxura bikaineko gizona; ahoa zabaltzera behartu eta txarrikia janarazo nahi eutsoen. Bera, ostera, bizitza lotsagarria baino heriotza ospetsua nahiago ebanez, bere gogoz joian makilakadak hartzera, ahoan ebana botaz. Holantxe egin behar dabe galarazotako janaria gitxiesteko kemena dabenek, bizia galduko badabe be.

Legearen kontrako jatordu sakratu haretan buru ziranek aparte hartu eben Eleazar. Aspalditik ezaguna ebelako, jatea zilegi jakon haragia berak prestatu eta ekartzeko esaten eutsoen, eta, ha janez, erregeak agindutako sakrifizioetako haragia jaten eban itxurak egin egizala; holan, heriotzatik libratuko zan eta, aspaldiko adiskidetasunagaitik, gizabidez erabiliko eben.

Baina Eleazarrek erabagi jatorragoa hartu eban, bere adinari, zahartzaroaren nobleziari, lanean

zuritutako ule agurgarriari, umearotik izan eban jokaera bikainari eta, batez be, Jainkoak ezarritako lege santuari egokion erabagia; beraz, lehenbailehen hil egiela erantzun eutsen. Hau inotsen: «Gure adinean ez da egoki itxurak egiten ibiltzea; gazte askok uste izango dau Eleazarrek, bere laurogeita hamar urtegaz, jentilen ohiturak hartu dituala eta, gelditzen jatan bizitza apurra luzatzeko nik itxurakeria hori egingo baneu, gazteak okertu egingo litzatekez nire erruz, eta hori nire zahartzaroa zikintzea eta lotsagarri egitea izango litzateke. Gainera, une batez gizakien zigorrari ihes egingo neuskion arren, ezin izango neuke Ahalguztidunaren eskuetatik ihes egin, ez bizitzan, ez heriotzan. Horregaitik, orain neure bizia kementsu emonez, nire zahartzaroari dagokion duintasunez agertuko naz, eta jarraibide bikaina itziko deutset gazteei, gure lege agurgarri eta santuakaitik gogotsu eta kementsu emon dagien bizia».

Hori esanda, oinaze-lekura abiatu zan behingoan. Eroienek gogorkeria bihurtu eben lehentxuago agertutako

biguntasuna, esan ebazan berbak zorokeriatzat hartu ebezan-eta. Eleazarrek, zigorragaitik hil zorian egoala, zotinka esan eban: «Jaunak, jakituria santuaren jaube danak, ondo daki heriotzari ihes egin neikiola eta, neure gorputzean oinaze gogorrak jasaten dodazan arren, neure barruan pozik daroadazala beraganako begiruneagaitik».

Holan hil zan Eleazar. Bere heriotzaz, prestutasun- eta onbide-jarraibide gogoangarria itzi eutsen, gazteei ez ezik, baita herritar guztiei be.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 3, 2-3. 4-5. 6-7 (R/. 6b)

R/. **Jaunak deust eusten.**

V/. Jauna, bai ugari dirala nire arerioak,
bai ugari nire aurka jagitzen diranak.
Ugari dira nitaz dinoenak:
«Ez dau salbazinorik Jainkoagan». R/.

V/. Baina Zu zaitut, Jauna, babeski, Zu neure ohore;
Zeuk deustazu burua jasotzen.
Oihuka dei egiten deutsat Jaunari,
eta erantzuten deust bere mendi

santutik. R/.
V/. Oheratzen naz, lokartu eta esnatzen,
Jaunak deust-eta eusten.
Milaka areriok inguratzen banau be
nik bildurrik ez. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Norbaitek atea edegitzen badeust,*
*harenean sartuko naz eta alkarregaz afalduko dogu.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 3, 1-6. 14-22

Jaunak niri, Joani, esan eustan: «Idatzi egiozu Sardesko eleiz alkartearen aingeruari: Hona zer dinoan Jainkoaren zazpi espirituak eta zazpi izarrak dituanak: "Ezaguna dot zure jokabidea; bizi danaren itxura dozu, baina hilda zagoz. Zagoz erne eta indarbarritu egizu oraindino bizirik dozuna, guztiz hil baino lehen, zure jokabidea neure Jainkoaren aurrean behar baizen ona ez dala ikusi dot-eta. Gogoratu egizu, bada, zelan entzun eta hartu zenduan mezua; gorde egizu eta bihotz-barritu zaitez. Izan be, erne ez bazagoz, lapurra lez etorriko naz-eta, gitxien itxaroten dozun orduan etorri

be.

Baina badozuz Sardesen euren jantziak zikindu ez dabezan gitxi batzuk; nigaz ibiliko dira zuriz jantzita, merezi dabe-eta.

Garailea zuriz jantziko dabe, eta ez dot kenduko haren izena bizien liburutik; eta haren alde urtengo dot neure Aitaren eta beronen aingeruen aurrean".

Belarririk dauanak entzun begi Espirituak eleiz alkarteei esaten deutsena.

Idatzi egiozu Laodizeako eleiz alkartearen aingeruari: Hona zer dinoan Amen deritxonak, testigu leial eta egiazkoak, Jainkoak egindakoen sorburu danak: "Ezaguna dot zure jokabidea; ez zarala hotz, ez bero. Ai hotz nahiz bero bazina! Baina epel zaralako, eta ez bero, ez hotz, botagura emoteraino higuintzen nozu.

Hau dinozu: 'Aberatsa naz, oso aberatsa, ez dot ezeren beharrizanik'. Eta ez zara konturatzen gizajoa zarala, errukarria eta behartsua, itsu eta biluzik zagozala. Aholku hau emoten deutsut: erosi egidazu sutan

garbitutako urrea, aberastu zaitezan; erosi soineko zuriak zeure burua janzteko, zeure narrugorrian lotsagarri agertu ez zaitezan; erosi kolirioa begietan emoteko, ikusi dagizun.

Maite dodazanei egiten deutset errieta eta horreek ditut zuzentzen. Ahalegindu zaitez, beraz, eta bihotz-barritu.

Hara, atean nago deika; norbaitek nire ahotsa entzun eta atea edegitzen badeust, harenean sartuko naz eta alkarregaz afalduko dogu. Garailea Neugaz jesarriarazoko dot neure tronuan, Neu be garaile izan eta neure Aitagaz beronen tronuan jesarri nintzan lez".

Belarririk dauanak entzun begi Espirituak eleiz alkarteei esaten deutsena».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 15 [14], 2-3a. 3b-4b. 5 (R/. Ap 3, 21)

R/. **Garailea neugaz jesarriarazoko dot neure tronuan.**

V/. Akatsik barik eta zuzen jokatzen dauana;

bihotzean egiazale izan
eta mihinaz inor kaltetzen ez dauana. R/.
V/. Hurkoari gatxik egiten ez deutsona,
auzokoa iraintzen ez dauana.
Jaunak baztertua gitxiesten dauana
eta jainkozaleak ohoratzen dituana. R/.
V/. Dirua lukurreriaz mailegatzen ez dauana
ezta errubakoaren kaltetan eskupekorik hartzen be.
Holan jokatzen dauana
ez da sekula kili-kolo egongo. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*1 Jn* 4, 10b

R/. **Aleluia.**
V/. Jainkoak gu maite izan gaitu,
eta bere Semea
gure pekatuen parkamen-oparitzat bialdu dau. R/.

## EBANJELIOA

*Gizonaren Semea galduta egoana bilatzera eta salbatzera etorri da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 19, 1-10

Aldi haretan, Jesus Jerikon sartu eta herrian zehar joian. Bazan han Zakeo izeneko gizon bat, zergalari-buru zana, oso aberatsa. Jesus nor zan ikusi nahirik ebilen Zakeo, baina ezin eban jentetzagaitik, txikia zan-eta. Arineketan aurrera joan eta ikondo batera igon eban Jesus ikusteko, ze, handik igaro behar eban.

Jesusek, leku haretara heltzean, gora begiratu eta esan eutson: «Zakeo, jatsi behingoan, gaur zure etxean gelditu behar dot-eta». Behingoan jatsi zan eta pozik hartu eban etxean. Hori ikusirik, danak marmarka hasi ziran: «Pekatari baten etxera joan dok ostatuz».

Zakeok, ostera, zutunik jarrita, esan eutson Jaunari: «Jauna, neure ondasunen erdiak behartsuei emongo deutsedaz eta, inori ezer ostu badeutsat, lau halako bihurtuko deutsat».

Jesusek esan eutson: «Gaur salbazinoa etorri da etxe honetara, ze, berau be Abrahamen ondorengoa da. Izan be, Gizonaren Semea galdurik egoana bilatzera eta salbatzera etorri da».

Jaunak esana.

_______________________________3

# Urtean Zeharreko XXXIII. eguaztena
## I. urtean

**I. IRAKURGAIA**

*Munduaren Egileak bihurtuko deutsue arnasa eta bizia.*

Makabearrak bigarren liburutik

*2 M* 7, 1. 20-31

Egun hareetan, zazpi anaia atxilotu ebezan euren amagaz. Legeak galarazota eukan txarrikia jatera behartu nahirik, idi-zilez eta zartailuz zigortu ebazan Antioko erregeak.

Guztiz miragarria eta gogoangarria ama izan zan. Bere zazpi semeak egun berean hiltzen ikusi ebazan, eta bihotz handiz jasan eban dana, Jaunagan jarrita eukan itxaropenagaitik. Seme bakotxari adore emoten eutson bere hizkuntzan. Sentipen bikainez beterik eta, bere emakume-pentsaera gizon-kemenez jantziz, hau inotsen: «Nik ez dakit zelan agertu zinien nire sabelean; ez neutsuezan arnasa eta bizia nik emon, ezta zuen gorputzeko atalak

antolatu be. Munduaren Egileak, gizakien izatea eratu eta gauza guztiak sortuarazo dituanak berak, bihurtuko deutsue bere errukian arnasa eta bizia, orain zeuen buruari uko egiten deutsazue-eta beraren legeakaitik».

Antiokok uste eban mespretxu egiten eutsola emakumeak eta iraintzat hartu ebazan haren berbak. Oraindino bizirik egoan semerik gazteena; erregea mutila bereganatzen ahalegindu zan hitzez ez ezik baita zin eginez be, aberats eta zoriontsu egingo ebala, bere adiskidetzat hartuko eta kargu handiak emongo eutsozala, bere asaben ohiturei uko egiten baeutsen. Baina mutilak jaramonik be egiten ez eutsonez, erregeak amari dei egin eta eskatu eutson mutikoa konbentzitu egiala, beraren hobe beharrez.

Erregea eske eta eske ebilkonez, amak onartu eban semea konbentzitzea. Halan, harengana makurtu eta, errege ankerrari barre eginez, honan berba egin eutson bere hizkuntzan: «Seme, erruki zakidaz. Bederatzi hilabetez eroan zindudazan sabelean, hiru urtez emon neutsun

bularra, nik hazi eta hezi zaitut gaur arte, neuk emon deutsut jaten. Arren, seme, arren, begira zeru-lurretara eta ikusi horreetan dan guztia, eta jakin ezerezetik egin dauala Jainkoak hori guztia, eta gizakiok be era berean sortu gaituala. Ez, bada, borrero horren bildur izan; agertu zaitez anaien pareko eta onartu heriotza, errukialdia etortzean zeu be anaiekin batera barriro aurkitu zagidazan».

Amak oraindino berbetan ziharduala, mutikoak esan eban: «Zeren zain zagoze? Nik ez dot erregearen esana egingo, Jainkoak Moisesen bidez gure asabei emon eutsen legearen esana baino. Eta zuk, hebrearrei hainbeste kalte egin deutsezun horrek, ez dozu ihes egingo Jainkoaren eskutik».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 17 [16], 1. 5-6. 8 eta 15 (R/. 15c)

R/. **Esnatzean zure presentziaz naz asetuko, Jauna.**

V/. Entzun, Jauna, nire justizi eskea,
entzun nire deadarra;
makurtu belarria nire otoitzera,

ez dot engainurik ezpanetan. R/.
V/. Sendotu ditut oinak ezarritako bideetan,
ez dira aldendu nire pausuak zure arrastotik.
Deika nozu, Jainko, erantzuten deustazu-eta;
bihurtu nigana belarria, entzun nire ahotsa. R/.
V/. Zaindu nagizu begi-ninia lez,
gorde ni zeure hegoen kerizpean.
Nik, barriz, zuzena nazala,
zure aurpegia dot ikusiko,
esnatzean zure presentziaz naz asetuko. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Santua Jauna, Jainko ahalguztiduna,*
*bazan, badan eta etortzekoa dan ha.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 4, 1-11

Nik, Joanek, ikuskari bat izan neban. Ate bat zabalik ikusi neban zeruan, eta lehen hitz egin eustan turuta-hotsa lako ahotsak esan eustan: «Igon hona, eta ondoren jazotzekoak diranak erakutsiko deutsudaz».

Bat-batean, Espirituak hartu ninduan. Tronu bat ikusi neban zeruan, eta tronuan norbait jesarrita. Jesarrita egoanak jaspe eta kornalina harrien itxura eban, eta tronuaren inguruan esmeralda antzeko ortzadarra. Tronuaren inguruan hogeta lau aulki egozan, eta aulkietan jesarrita hogeta lau zahar, jantzi zuria soinean eta urrezko koroa buruan.

Tronutik tximistak, ostotsak eta trumoiak urteten eben; tronuaren aurrean zazpi argi-zuzi egozan sutan, Jainkoaren zazpi espirituak adierazoten ebezala, eta tronuaren aurrean itsasoaren antzeko zeozer argi-argia, kristala baizen gardena.

Tronuaren erdian eta inguruan lau izaki bizidun egozan, aurretik eta atzetik begiz beteak. Lehenengo izakia lehoiaren antzekoa zan, bigarrena zezenaren antzekoa; hirugarrenak gizakiaren antzeko aurpegia eban, eta laugarrena hegaz doan arranoaren antzekoa zan. Lau izakiok seina hego ebezan, eta begiz beteak egozan kanpotik eta barrutik. Gau eta egun hau dinoe eten barik:

«Santu, santu, santua Jauna, Jainko ahalguztiduna,
bazan, badan eta etortzekoa dan ha».

Eta izaki bizidunek tronuan jesarrita dagoanari, gizaldien gizaldietan bizi danari, aintza, ohorea eta esker ona emoten eutsoen bakotxean, hogeta lau zaharrak tronuan jesarrita dagoanaren aurrean ahuspezten ziran, gizaldien gizaldietan bizi dana gurtzen eben eta euren koroak tronuaren aurrera botatzen, esanez:
«Gure Jaun eta Jainko hori,
bazara Zu nor aintza, ohorea eta ahalmena hartzeko,
Zeuk zenduzan-eta gauza guztiak egin
eta zure nahi izatez
dira sortu eta diraue oraindino».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 150, 1-2. 3-4. 5-6 (R/. Ap 4, 8b)

R/. **Santu, Santu, Santua Jauna,**
**Jainko ahalguztiduna!**
V/. Goratu egizue Jainkoa bere santutegian,
goratu bere zeru-sabai sendoan.

Goratu egizue bere egite ahaltsuakaitik,
goratu bere neurribako handitasunagaitik. R/.
V/. Goratu egizue adar-soinuz,
goratu harpaz eta zitaraz.
Goratu egizue danbolinez eta dantzaz,
goratu hari-soinuz eta txirulaz. R/.
V/. Goratu egizue txilin ozenez,
goratu txilin durundariz.
Goratu begie Jauna arnasa daben guztiek! R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Jn* 15, 16

R/. **Aleluia.**
V/. Neuk aukeratu zinduedazan zuek,
eta eginkizun hau emon deutsuet:
frutu ugaria eta iraunkorra emon dagizuela edonon,
dino Jaunak. R/.

**EBANJELIOA**

*Zelan ez dozu nire dirua bankuan jarri?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 19, 11-28

Aldi haretan, Jesusek parabola bat

kontatu eutson jenteari, Jerusalemdik hur egoan eta jenteak Jainkoaren erreinua une batetik bestera azalduko zala uste eban: «Handiki bat urrutiko lurralde batera joan zan, errege-izendapena hartzera, gero bihurtzeko. Bere zerbitzarietako hamarri dei egin eta ontzako urre bana emon eutsen, esanez: “Ahalegindu irabaziak ataratzen, neu bihurtu bitartean”.

Baina herritarrek gorroto eben eta mandatariak bialdu ebezan ondotik, esatera: “Hori ez dogu errege gura”.

Errege-izendapena harturik bihurtu zanean, deitu eragin zituan dirua banatu eutsen morroiak, bakotxak zer irabazi eban jakiteko.

Aurkeztu zan lehenengoa eta esan eban: “Jauna, zure ontzakoak hamar halako emon dau”. Nagusiak esan eutson: “Ederto, morroi ona! Gauza gitxian zintzo izan zaran ezkero, hartu egizu hamar uriren agintea”.

Joan zan gero bigarrena eta esan eban: “Jauna, zure ontzakoak bost halako emon dau”. Honi be ugazabak esan eutson: “Hartu egizu bost uriren agintea”.

Joan zan bestea eta esan eutson: “Jauna, hemen dozu zeure ontzakoa; zapian batuta euki dot. Bildurra neutsun, gizon gogorra zaralako, emon bakoa eskatzen eta erein bakoa batzen dozuna”. Nagusiak, orduan: “Heure esanetik kondenatzen haut, morroi gaizto hori! Bahenkian gizon gogorra nazana, emon bakoa eskatzen eta erein bakoa batzen dodana. Zelan ez dok, bada, nire dirua bankuan jarri? Holan, bihurtzean, bere interesekin jasoko najoan”.

Eta han egozanei esan eutsen: “Kendu egiozue ontzakoa, eta emon hamar dituanari”. Hareek erantzun eutsoen: “Jauna, arterik be baditu hamar ontzako”. Eta nagusiak: “Hara zer dinotsuedan: Daukanari emon egingo jako; ez daukanari, barriz, daukan apurra be kenduko. Eta errege gura ez ninduen arerio horreek, ekarri hona eta hil egizuez neure aurrean”».

Berba honeek esan ostean, Jesusek Jerusalemgo bidean gora jarraitu eban danen aurretik.

Jaunak esana.

4

# Urtean Zeharreko XXXIII. eguena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jainkoak gure asabekin egindako itunari eutsiko deutsagu.*

Makabearrak lehenengo liburutik

*1 M* 2, 15-29

Egun hareetan, Antioko erregearen funtzionarioak Modin urira heldu ziran; euren erlijinoa ukatuarazo eta idoloei sakrifizioak eskeiniarazo behar eutsoen jenteari. Israeldar asko alkartu jaken; Matatias eta honen semeak, ostera, aparte gelditu ziran, alkarregaz.

Erregearen funtzionarioak honan berba egin eutsoen Matatiasi: «Buruzagi ospetsua eta ahaltsua zara zu uri honetan, eta zeure semeek eta senideek babesten zaitue. Zatoz, bada, beste inor baino lehen eta bete erregearen agindua, herri guztiek, Judeako jenteak eta Jerusalemen gelditu diranek egin daben lez. Eta zu eta zure semeak erregearen adiskideetakoak izango zarie eta urre, zidar eta beste erregalu asko emongo deutsue saritzat».

Matatiasek ozen erantzun eutsen: «Erregearen menpeko herri guztiek, hari obediduz, euren asaben erlijino-ohiturak baztertu eta haren aginduei men egiten badeutsie be, nik, nire semeek eta senideek Jainkoak gure asabekin egindako itunari eutsiko deutsagu. Jaun errukitsuak gorde gagizala legea eta aginduak baztertzetik. Ez deutsegu jaramonik egingo erregearen aginduei, eta ez gara ezertan aldenduko geure erlijino-ohituretatik».

Matatiasek berba honeek esan ebazaneko, judegu bat danen begi-bistan aurreratu zan, Modin urian eraikitako altara gainean sakrifizioa eskeintzera, erregeak agindu eban lez. Hori ikustean, sutu egin zan Matatias eta barruak dar-dar egin eutson; eta, legearen maiteminak eraginda, hasarre biziz, arineketan joan eta samea ebagi eutson judeguari altara gainean. Jentea sakrifizioak eskeintzera behartzen eban errege-funtzionarioa be hil egin eban aldi berean eta altarea txikitu. Holan, legeagazko maitemina erakutsi eban, antxina Pinhasek Saluren seme

Zimrigaz jokatu eban lez jokatuz.

Gero, oihu handiz deitu eban urian zehar: «Legea maite dabenak eta itunari eutsi nahi deutsoenak, betoz nire ondoren!» Matatiasek eta beronen semeek ihes egin eben mendira, urian eben guztia itzirik.

Orduan, judegu asko, legearen arabera zintzo bizi nahirik, basamortura jatsi zan, bertan bizitzeko asmoz.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 50 [49], 1-2. 5-6. 14-15 (R/. ik. 23b)

R/. **Zuzen dabilenari deutsat Jainkoaren salbamena erakusten.**

V/. Jaunak, jainkoen Jainkoak, dino:
dei egiten deutso lurrari batzarrera
eguzkiaren sorlekutik sarlekura.
Siondik, edertasun beteko menditik,
dirdaitsu agiri da Jainkoa. R/.

V/. Batu egizuz nire fededunak,
sakrifizioa eskeiniz nigaz ituna egin ebenak.
Iragarri begi zeruak haren justizia,
Jainkoa bera da epaile. R/.

V/. Eskeini esker onezko oparia Jainkoari,
bete zeure promesak Goi-goikoari.

Dei egidazu larrialdian;
libratuko zaitut, eta zuk goratuko nozu.
R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Hila izan da Bildotsa,*
*eta, bere heriotzaz, Jainkoarentzat irabazi ditu*
*nazino guztietako gizon-emakumeak.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 5, 1-10

Nik, Joanek, tronuan jesarrita dagoanaren eskuman liburu bat ikusi neban, barrutik eta kanpotik idatzita, eta zazpi zigiluz joa.

Eta aingeru indartsu bat ikusi neban, ozen deadar egiten: «Nor da gai liburua edegitzeko eta beraren zigiluak askatzeko?» Eta ez zan inor be, ez zeruan, ez lurrean, ez lurpean, liburua edegi eta irakurri eikeanik. Nik negar eta negar niharduan, liburua edegitzeko eta irakurtzeko inor be agertu ez zalako. Orduan, zaharretako batek esan eustan: «Ez negarrik egin. Hara, garaile urten dau Judaren leinuko lehoiak, Daviden kimuak, eta beronek edegiko ditu liburua eta zazpi zigiluak».

Orduan, tronuaren erdian eta lau

izaki bizidunen eta zaharren erdian, Bildotsa ikusi neban: zutunik egoan eta samea ebagita izanaren ezaugarriak ebazan; zazpi adar eta zazpi begi ebazan, hau da, Jainkoak lur guztira bialdu dituan zazpi espirituak. Etorri eta liburua hartu eban tronuan jesarrita dagoanaren eskumako eskutik. Liburua hartu ebanean, lau izakiak eta hogeta lau zaharrak Bildotsaren aurrean ahuspeztu ziran. Zitara bana eben eta intsentsuz betetako urrezko ontziak, Jainkoarenak diranen otoitzen adierazgarri. Eta kantu barri hau abestu eben:

«Zu bazara nor liburua hartu
eta honen zigiluak edegitzeko,
hila izan zaralako,
eta, zeure heriotzaz, Jainkoarentzat irabazi dozuz
arraza, hizkuntza, herri eta nazino guztietako
gizon-emakumeak;
eta errege eta abade dan herri egin dozuz
gure Jainkoarentzat,
eta errege izango dira lur osoan».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 149, 1-2. 3-4. 5-6a eta 9a (R/. Ap 5, 10)

R/. **Errege eta abade dan herri egin gaituzu**
**geure Jainkoarentzat.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Kanta Jaunari kantu barria,
kanta haren gorespena fededunen batzarrean.
Poztu bedi Israel bere Egileaz,
alaitu siondarrak euren Erregeaz. R/.

V/. Goratu begie haren izena dantza eginez,
jo begie harentzat danbolina eta zitara.
Maite dau-eta Jaunak bere herria,
garaipenez jantziko ditu umilak. R/.

V/. Alaitu beitez fededunak Jainko ospetsuaz,
egin begie pozez oihu euren etzunlekuetan.
Bego Jainkoaren gorapena hareen eztarrian,
ohorea da haren fededun guztientzat. R/.

## Aleluia

Ik. *Sal* 95 [94], 8a. 7d

R/. **Aleluia.**
V/. Gaur, ez gogortu bihotza;
entzun Jaunaren ahotsa. R/.

## EBANJELIOA

*Ulertuko bazendu zeuk be gaur bakerako bidea!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 19, 41-44

Aldi haretan, Jesus, Jerusalemera hurreratu eta uria ikustean, negarrez hasi zan hagaitik, eta esan eban: «Ai Jerusalem, ulertuko bazendu zeuk be gaur bakerako bidea! Baina ez zara gauza hori ikusteko. Etorriko jatzu, bai, zeure arerioek hesiz inguratu, setiatu eta alde guztietatik erasoko deutsuen sasoia; txikitu egingo zaituee zeu eta zeure bizilagunak; eta ez deutsue harririk harri gainean itziko, Jainkoak eskeini deutsun salbazino-aukera aintzat hartu ez dozulako».

Jaunak esana.

5

# Urtean Zeharreko XXXIII. barikua

## I. urtean

## I. IRAKURGAIA

*Altara barriaren sagaratzea ospatu eben,*
*eta erre-opariak eskeini ebezan poz handiz.*

Makabearrak lehenengo liburutik

*1 M* 4, 36-37. 52-59

Egun hareetan, Judasek eta honen anaiek esan eben: «Desegin doguz arerioak; igon daigun santutegiaren garbikuntza egitera eta ha barriro Jainkoari sagaratzera». Gudaroste osoa batu eta Sion mendira igon eben.

Seleukotarren agintealdiko ehun eta berrogeta zortzigarren urtean, bederatzigarren hilaren –hau da, Kisleu hilaren– hogeta bostean, goizean goiz jagi eta sakrifizioa eskeini eben legearen arabera, eraiki barria eben erre-oparietarako altaran. Lehengo altarea jentilek profanatu eben egun eta ordu berean inauguratu eben altarea kantu artean, zitara, harpa eta txilina joz.

Herri osoak, lurreraino ahuspezturik, gurtu eta goratu eban garaipena emon eutson Jainkoa. Zortzi egunez ospatu eben altarearen sagaratzea, eta erre-opariak eskeini ebezan poz handiz, baita alkartasun- eta esker onezko opariak be. Tenpluaren aurrealdea

urrezko koroaz eta babeski txikiz apaindu eben, sarrerak eta gelak konpondu eta ateak ipini eutsiezan.

Handia izan zan herriaren poza, eta jentilek egindako iraina ezabatuta gelditu zan. Eta Judasek, honen anaiek eta israeldarren batzar osoak altarea sagaratzearen urteurrena bere sasoian, Kisleu hilaren hogeta bostetik aurrera, zortzi egunez urtero poz handiz ospatzea erabagi eben.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*1 Kro* 29, 10bc. 11. 12 (R/. 13b)

R/. **Zure izen ospetsua goresten dogu, Jauna.**

V/. Bedeinkatua Zu, Jauna, gure aita Israelen Jainkoa,
betidanik betidaino. R/.

V/. Zeurea dozu, Jauna, handitasuna eta indarra,
ospea, distira eta nagusitasuna;
zeurea dozu zeru-lurretan dagoan guztia,
zeurea, Jauna, erregetza
eta diran guztien gaineko nagusitza. R/.

V/. Zugandik datoz aberastasuna eta ospea,

zeure menpe dozu dana.
Zeure esku dozu indarra eta ahalmena,
zeure esku guztia handi eta sendo egitea. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Hartu neban liburutxua eta iruntsi egin neban.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 10, 8-11

Zerutik entzuna neban ahotsak barriro berba egin eustan niri, Joani, eta esan eustan: «Zoaz eta hartu itsas gainean eta lehorrean zutunik dagoan aingeruak eskuan dauan liburu edegia».

Joan nintzan, bada, aingeruagana eta liburutxua emoteko esan neutsan. Harek esan eustan: «Hartu eta iruntsi; sabela garraztuko deutsu, baina ahoan eztia baizen gozo izango dozu». Hartu neban liburutxua aingeruaren eskutik eta iruntsi neban. Ahoan eztia baizen gozo izan jatan, baina, iruntsi nebanean, sabela garraztu eustan.

Orduan, esan eusten: «Barriro be herri, nazino, hizkuntza eta errege askoren kontra profetizatu beharko dozu».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 14 eta 24. 72 eta 103. 111 eta 131 (R/. 103a)

R/. **Bai gozoa niretzat, Jauna, Zuk agindua!**

V/. Zure aginduak betetzea niretzat pozgarriago,
aberastasun guztiak baino.
Bai, zure aginduetan dot gozamena,
horreek neure kontseilari. R/.

V/. Zein ona niretzat zure ahoko legea,
urre-zidarrezko milaka txanpon baino hobea.
Bai gozoa niretzat Zuk agindua,
ahoan eztia baino gozoagoa. R/.

V/. Zure aginduak nire ondare betiko,
hareek deuste-eta bihotza pozten.
Ahoa zabaltzen dot eta arnasa hartzen,
zure aginduak biziro ditut-eta gogoko. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 10, 27

R/. **Aleluia.**

V/. Nire ardiek entzuten dabe nire ahotsa,

dino Jaunak;
Nik ezagutzen ditut,
eta hareek jarraitu egiten deuste. R/.

## EBANJELIOA

*Jainkoaren etxea lapur-zulo egin dozue.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 19, 45-48

Aldi haretan, Jesus, tenpluan sarturik, bertan salerosketan ziharduenak kanpora botatzen hasi zan, esanez: «Liburu Santuak dino: “Nire etxea otoitz-etxe izango da”. Zuek, ostera, “lapur-zulo” bihurtu dozue».

Egunero tenpluan irakasten jarduten eban. Abadeburuak, lege-maisuak eta herriko handikiak Jesus hil guran ebiltzan; baina ez eben asmatzen zer egin, ze, herri guztia aho zabalik egoan hari entzuten.

Jaunak esana.

______________________________________6

# Urtean Zeharreko XXXIII. zapatua

## I. urtean

## I. IRAKURGAIA

*Jerusalemen egin nituan okerrakaitik,*
*atsekabearen atsekabez hilko naz.*

Makabearrak lehenengo liburutik

*1 M* 6, 1-13

Egun hareetan, ipar-eskualdeetan ebilen Antioko erregea; han jakin eban bazala Pertsian uri bat, Elimaida izenekoa, eukazan aberastasun, zidar eta urreagaitik ospetsua. Hango jauretxea izugarri aberatsa zan, bertan gordetzen ziran-eta Mazedoniako Filiporen seme Alexandrok, Greziako lehen erregeak, itzitako urrezko gudu-jantziak, bular-oskolak eta armak. Hara joan zan Antioko, uria hartu eta bertako ondasunez jaubetzeko asmoz; baina ez eban lortu. Izan be, uriko bizilagunek haren asmoen barri izan eben eta, armetan jarriz, aurre egin eutsoen. Antiokok ihes egin behar izan eban atsekabe handiz eta Babiloniara bihurtu zan.

Pertsian zala, mezulari bat etorri jakon barri hau ekarriz: Judeara bialdu ebazan gudari-taldeak hondatuta geratu zirala-eta, gudaroste indartsu baten buru hara joan zan Lisiasek judeguengandik ihes egin behar izan ebala; eta judeguak indartu egin zirala menperatutako gudarosteari

harrapatutako arma, gudu-tresna eta harrapakin ugariei esker; Jerusalemgo altara gainean erregeak eraiki eban idolo higuingarria txikitu egin ebela eta tenplua harresi handiz inguratu, lehen egoan lez; beste horrenbeste erregearen uria zan Bet-Sur.

Halako barriak entzutean, erregea ikaraz bete zan eta biziro larritu. Nahigabearen nahigabez oheratu egin behar izan eban, gauzak nahi lez urten ez eutsoelako.

Egun asko egin eban ohean, gero eta nahigabe handiagoak jota, hiltzera joiala sentitu eban arte. Orduan, bere adiskide guztiei dei egin eta esan eutsen: «Loak ihes egin deust begietatik eta larri dot bihotza. Neure buruari esaten deutsat: "Zer dala-eta nahigabe hau, zergaitik nago hain larrituta, neure agintealdian ona eta maitatua izan nazala? Orain, ostera, jaubetzen naz zelako okerrak egin nituan Jerusalemen, hango urrezko eta zidarrezko gauzak eroanez eta Judeako bizilagunak arrazoirik barik triskatuz. Autortzen dot horrexegaitik etorri jatazala gatx honeek, eta atsekabearen

atsekabez hilko naz lurralde arrotzean"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 9 [9 A] 2-3. 4 eta 6. 16 eta 19 (R/. ik. 15c)

R/. **Alaituko naz, Jauna, zure salbamenaz.**

V/. Jauna, bihotz-bihotzez zaitut goratuko,
zure egintza ospetsuak ditut iragarriko,
zure ohorez poztu eta jai egingo,
zure izena, Goi-goiko, kantuz ospatuko. R/.

V/. Izan be, atzera egin dabe nire arerioek,
zure aurrean estropezu egin eta galdu dira.
Jentil-herriei gogor egin deutsezu,
gaiztoak hondatu dozuz,
hareen izena betiko ezereztu. R/.

V/. Eurek egindako zulora jausi dira jentil-herriak,
eurek jarritako sarean trabatu jake oina.
Jainkoa ez da betiko ahazten behartsuaz,
ez dau inoiz huts egingo errukarrien itxaropenak. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Profeta bi horreek samin larria sortzen eutsien lurreko bizilagunei.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 11, 4-12

Niri, Joani, esan eustan: «Testigu bi honeek lurraren Jaunaren aurrean zutunik dagozan olibondo biak eta argimutil biak dira. Norbaitek kalte egin nahi badeutse, suak urtengo dau hareen ahotik eta arerioak iruntsiko ditu; holantxe hilko da horreei kalte egin nahi deutsena. Honeek zerua ixteko ahalmena dabe, euririk egin ez dagian profetizatzen jardungo daben sasoian; ura odol bihurtzeko ahalmena be badabe, baita lurra edozein izurritez zigortzeko be nahi daben guztietan.

Baina, euren autormena amaitzean, lezatik igongo dauan piztiak burruka egingo deutse, menperatu eta hil egingo ditu. Hareen gorpuak irudizko hizkeran Sodoma nahiz Egipto deritxon uri handiko plazan geldituko dira, hareen Jauna be kurutzeratu eben leku berean. Herri, arraza, hizkuntza eta nazino guztietako jentea etorriko da

hiru egun eta erdiz hareen gorpuak ikustera, eta ez dabe hilobiratu dagiezan itziko. Lurreko bizilagunek poztu eta jai egingo dabe hareen kontura, alkarri esku-erakutsiak eginez, profeta biek samin larria sortzen eutsien-eta lurreko bizilagunei.

Hiru egun eta erdi horreek igaro ondoren, ostera, Jainkoak bialdutako bizi-arnasa testigu bien barruan sartu zan, zutunik jarri ziran, eta bildur handiak hartu ebazan begira egozanak.

Orduan, ahots handia entzun neban zerutik hareei esaten: "Igon hona". Eta zerura igon eben hodei baten, arerioen begi aurrean».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 144 [143], 1. 2. 9-10 (R/. 1a)

R/. **Bedeinkatua Jauna, nire harkaitza.**

V/. Bedeinkatua Jauna, nire harkaitza,
eskuak gudurako eta ukabilak burrukarako
trebatzen deustazana. R/.

V/. Nire laguntzailea eta gaztelua,
gotorlekua eta askatzailea,
nire babeskia eta geriza.

Berak deustaz herriak menpean jartzen.
R/.
V/. Kantu barria kantatuko deutsut, oi Jainko,
hamar hariko harpa joko Zuretzat;
Zeuk emon zeuntsen erregeei garaipena,
Zeuk askatu zenduan David, zeure zerbitzaria. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *2 Tm* 1, 10

R/. **Aleluia.**
V/. Kristo Jesus gure salbatzaileak heriotza ezereztu dau
eta bizia argitu Barri Onaren bidez. R/.

## EBANJELIOA

*Ez da hildakoen Jainko, biziena baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 20, 27-40

Aldi haretan, saduzear batzuk hurreratu jakozan Jesusi (saduzearrek ez dabe onartzen hildakoak biztuten diranik), eta itaundu eutsoen: «Maisu, Moisesek idatzi euskun: “Nonori anaia

ezkondua seme-alaba barik hiltzen bajako, ezkondu bedi alargunarekin, anaiari ondorengoa emoteko”.

Baziran, behinola, zazpi anaia. Zaharrena ezkondu eta seme-alabarik barik hil zan. Bigarrena eta hirugarrena alargunagaz ezkondu ziran, eta zazpirak bardin. Eta danak seme-alaba barik hil ziran. Azkenik, hil zan emakumea be. Biztuerakoan, zeinen emazte izango da, ze zazpirek izan eben emazte?»

Jesusek erantzun eutsen: «Mundu honetan gizon-emakumeak ezkondu egiten dira; baina datorren munduan ez dira ezkonduko, hildakoen biztueran parte hartzeko Jainkoak gai aurkituko dituanak, gizaseme nahiz emakume; izan be, ezin leitekez hil, ze, aingeruak lakoak dira eta Jainkoaren seme-alaba, biztueran parte daben ezkero. Gainera, hildakoak biztuten dirala Moisesek berak adierazoten dau, sutan egoan sasiaren pasartean, Jaunari “Abrahamen Jainko, Isaaken Jainko eta Jakoben Jainko” deitzen deutsonean. Ez da hildakoen Jainko, biziena baino, harentzat danak bizirik dagoz-eta».

Orduan, lege-maisu batzuek esan eben: «Maisu, ederto esan dozu». Eta ez ziran ausartzen beste itaunik egiten.

Jaunak esana.